KANTUA: **"Zu zara gure poza,**
**Kurutz Salbatzailea!..."**

Hor Jaunaren ikurrina:
Kurutzea, dirdaidun.
Bizia danak hor hilez;
bizitza emon euskun.







# KURUTZ BIDEA

Hausnartu eizuz gauza guztiok, eta begira zenbaterainoko maitasuna eban Jesusek...

*Jesus Jauna, zure kurutzea bizitzea darion zuhaitz bihurtu dozu; bateoan pekatuari uko eginez grazi-bizitzara jaio garenoi emoiguzuz zure kurutzean lortu deuskuzuzan frutuak. Errege bizi zara-ta, gizaldi eta gizaldietan. Amen*.

13.a Kurutze ganetik bere Amagana,
hemen erasten da Jesus laztana.

* Errukitu, Jauna. ** Pekatari honegaz.

**14. HAMALAUGARREN EGOTALDIA**:
JESUSEN GORPUZ HILOBIAN SARTZEN DABE

- *Te adoramos, Cristo, y te bendecimos.*
- ***Porque por tu santa cruz redimiste al mundo***

Arimateako Josek eta Nikodemok Kristoren gorpua izara baten batu eta hilobi barri baten sartzen dabe. Itxura baten, dana amaitu da porrotean. Baina itxaropen barri bat sortzen da; "*Hirugarren egunean biztuko naz*" esan eban Jesusek. Hilobia hutsik geratuko da. Eta Ikas-



**Kantua**:

Zure aurpegi bila / gabiltza gu, Jauna;
zu zaitugu argi eta salbamen,
zu, **Jau**na, biziaren babes.

—Uste on izan Jaunagan eta izan gizon
Jaso bihotza eta Jaunagan sendo egon
Zelan dan Aita umeentzat bihozpera
halan da Jauna fededunentzat onbera

**1. LEHENENGO EGOTALDIA:**
JESUS KURUTZEAN HILTERA ZIGORTU DABE

- *Te adoramos, Cristo, y te bendecimos.*
- ***Porque por tu santa cruz redimiste al mundo***

Jesús callaba en el juicio. Todos lo acusaban. A decir de Caifás, convenía que muriera un hombre por el bien del pueblo. Los poderosos y los ricos lo consideraban malvado, porque pretendía imponer una nueva Ley que favorecía al necesitado, acogía al pecador y al marginado, y se consideraba con derecho a renovar la Ley de Moisés.

*Errubakoa epaitua ta zigortua. Gogoan izan daiguzan gaur egun ere zigortuak diran erru-*

**11. HAMAIKAGARREN EGOTALDIA**:
JESUS KURUTZEAN JOSTEN DABE

- *Te adoramos, Cristo, y te bendecimos.*
- ***Porque por tu santa cruz redimiste al mundo***

Erruki bako gizonek, Jesusen esku ta oinak, untze handiez josten dabez kurutzean. Jesusek bere oinaze guztiak Jaungoikoari eskeintzen deutsoz, jakinik gu salbatzeko direla. Oraintxe eskeintzen dauz oso-osoan bere gorputza eta odola gure pekatuen parkamenerako; bere aurka pekatu egiten daben guztientzat Jaungoiko Aitari parkamena eskatzen deutso: “Aita, parkatu eiezu, zer egiten daben ez dakie-eta.”

*Jesus Jauna, errukitu zaitez nitaz gaur; eta parkatu nire pekatu guztiak.*

11.a Oinak eta eskuak untzez josirik,
hemen dago Kristo minez beterik.

* Errukitu, Jauna. ** Pekatari honegaz.

**12. HAMABIGARREN EGOTALDIA**:
JESUS JAUNA KURUTZEAN HILTEN DA



Zeru-lurren erregea, Jaungoikoaren Semea, hor ikusten dogu beheratuta, apaltasunik handienean; mundukoen artean azkenengo eginda, gorputz guztia zigorkadaz astinduta, odoletan...

*Lurra jo dau kurutz aztunaren azpian. Jausi eta zutundu egin zinan, Jesus, pekatuan jausita gagozenok altxatzeko. Urten daigula gure pekatutik, zure urratsak jarraitzeko beti.*

3.a Hemen jausi zan Jesus lurrera
lurra jasoteko bere aurrera.

* Errukitu, Jauna. ** Pekatari honegaz.

**4. LAUGARREN EGOTALDIA**:
JESUS BERE AMA MARIAGAZ
AURKITZEN DA BIDEAN

- *Te adoramos, Cristo, y te bendecimos.*
- ***Porque por tu santa cruz redimiste al mundo***

Zeruko ama, Maria; zenbat sufritu zendun Kalbariora bidean, zeure Seme Jesus ikusi zenduanean: zauriturik, buru makur, odolez, hautsez ta izerdiz zikinduta. Orduantxe bai ezpata batek alderik alde zulatu eutsula bihotza!

8.a Pekatuagaitik negar egizu:
Bada neure penak horrek emon ditu.

* Errukitu, Jauna. ** Pekatari honegaz.

**9. BEDERATZIGARREN EGOTALDIA**:
JESUS HIRUGARRENEZ JAUSTEN DA LURRERA

- *Te adoramos, Cristo, y te bendecimos.*
- ***Porque por tu santa cruz redimiste al mundo***

Nekearen nekeaz, indarrak amaituz joakoz Jesusi. Eta aldapan gora hirugarrenez jo dau lurra. Gudari bihotz bakoek, barriz, barriro zigortuko dabe apurtuta egoan Jesus.

*Jauna, zugaz batera zutundu gaitezela, zeuk lez Jaungoiko Aitaren borondatea azkeneraino bete daigun.*

9.a O pekatuaren gauza astuna,
hirugarrenian jo dau hemen lurra!

* Errukitu, Jauna. ** Pekatari honegaz.



*Geuk ere pozik lagunduko geuskion kurutzea eroaten Jesusi, baina ez ginan egon han. Eta gaur, Jesusek hauxe dinosku: “Hartu eizu egunero zure kurutzea eta lagundu besteei kurutzea eroaten. Zahar eta gaisoei, guraso ta ezagunei, alargun ta umezurtzei, pobreei ta behar barik dagozenei, bakarrik sentitzen direnei, problema handiak daukezenei...; prestatu zure zerbitzuak etxekoei, auzokoei, elizeari... Izan zeu ere Zireneko Simon langoa. Sufritzen dagozen guztiengan aurkituko nozu...”*

5.a Kurtzia eroaten nahi dozu lagundu?
Bada hemen nahi dabe lagun bat hartu.

* Errukitu, Jauna. ** Pekatari honegaz.

**6. SEIGARREN EGOTALDIA**:
BERONIKAK JESUSI
AURPEGIA GARBITZEN DEUTSO

- *Te adoramos, Cristo, y te bendecimos.*
- ***Porque por tu santa cruz redimiste al mundo***

Bai! Golgota bidean jente asko egoen, jazo-

**Sarrerea**

Al identificarnos con Jesús en su caminar hacia la Cruz (Vía Crucis), celebramos el misterio de nuestra Redención-Salvación. El Hijo de Dios se entrega para que nosotros tengamos vida.

Con deseos de conversión, sigámosle a Jesús en su caminar ascendente. En él encontraremos el perdón. Recordemos sus palabras en la última cena: «*Éste es mi cuerpo que se entrega por vosotros; ésta es mi sangre que se derrama por vosotros…*»

Agradezcámosle sinceramente que nos haya abierto las puertas para una nueva vida. Estamos en deuda con quien nos salva.

Tendremos presentes en nuestra oración a los que nos han precedido, a nuestros familiares difuntos (**N.** y **N…**) que, gracias a la pasión de Jesucristo gozan de la felicidad eterna.



leak ogia zatitzean Jesusegaz aurkituko dira. Jaungoiko Aitak ez dau itxi bere Semea heriotzearen menpean. Jesusek munduan egin eta esan dauana ontzat hartzen dau Aitak, eta hilen artetik bizi barrirako atarako dau bere Seme maitea. Guk, Kristoren heriotzea eta biztuerea gogoratzen ditugunok, gogoan izan daiguzela Aitak Tabor mendian esandako hitzok: "*Hauxe da nire Seme maitea: entzun eiozue*."

14.a Lurperatu gura dau zure bihotzian
Jesus hilak, betiko zu bizi zaitian.

* Errukitu, Jauna.   ** Pekatari honegaz.

**AZKENA**

Kurutze maite, osasungarri, zeu zara gure poz iturri!

Kurutze salbagarria, zeure besoetan Kristo gure Salbatzailea izan zenduana. Jaungoikoak izan deuskun maitasun neurrigabearen ezaugarri eta biztuerearen itxaropen. Penitentzi aldi honetan ugaritu eizu sinistedunengan Jaungoikoaren grazia.

*bakoak. Gure norkeriekaitik, injustiziekaitik, geu handi izateko azpiratzen ditugunak...*

1.a Sententziau dabe Jesus maitia,
kurtzian hiltera. O ze penia!

**2. BIGARREN EGOTALDIA**:
JESUS, KURUTZEAGAZ KALBARIORA BIDEAN

- *Te adoramos, Cristo, y te bendecimos.*
- ***Porque por tu santa cruz redimiste al mundo***

Egur aztuna lepoan daroazula, hor zoaz, Jesus, urkamendira... Isilik, abere-hiltegira daroen bildotsa lez. Emoiguzu, Jauna, eguneroko kurutzea eroateko adorea ta eroapena.

2.a Orain hartzen ditu kurtze batian
gure pekatuak bere ganian.

* Errukitu, Jauna. ** Pekatari honegaz.

**3. HIRUGARREN EGOTALDIA**:
JESUS LEHENENGOZ JAUSTEN DA LURRERA

- *Te adoramos, Cristo, y te bendecimos.*
- ***Porque por tu santa cruz redimiste al mundo***



- *Te adoramos, Cristo, y te bendecimos.*
- ***Porque por tu santa cruz redimiste al mundo***

*(Egin daigun isilean otoitz, kurutzean hilda ikusten dogun Jesusen aurrean).*

*Eskerrak, Jauna, kurutzean hilez bizi barria emon deuskuzulako. Ez daigula alperrik galdu doai eder hau, pekatu eginaz.*

12.a Hemen Jesus hil zan gizonagaitik:
gomutatu zaitez orain ta beti.

* Errukitu, Jauna. ** Pekatari honegaz.

**13. HAMAHIRUGARREN EGOTALDIA**:
KURUTZETIK JATSI
ETA AMAREN ALTZOAN IPINTEN DABE JESUS

- *Te adoramos, Cristo, y te bendecimos.*
- ***Porque por tu santa cruz redimiste al mundo***

Bihotz samurrez begiratu eiozue, eta ikusi kurutzean josi dabenaren zauriak eta odola; Mariaren altzoan itxi daben Jesus onaren gorpua; zenbat ordaindu dan gu salbatzeko...!

*Zure antzera, Ama, askok ikusten dabez euren seme-alabak heriotza bidean: goseak hilten umeak, akzidenteetan, geisotasunaz, drogaz, edo politika ideal batzuk direla-ta... Lagundu eiguzu guztioi Jesusen jarraitzaile izaten, eta emon eiezu, Ama, guztiei seme-alabak maite izateko eta eurei laguntzeko bihotz handi bat*.

4.a Nok esan leike*n* Amaren penia,
honelan ikusita bere Semia.

* Errukitu, Jauna. ** Pekatari honegaz.

**5. BOSTGARREN EGOTALDIA**:
ZIRENEKO SIMONEK KURUTZEA EROATEN LAGUNTZEN DEUTSO JESUSI

- *Te adoramos, Cristo, y te bendecimos.*
- ***Porque por tu santa cruz redimiste al mundo***

Gero ta makalago ikusten eben Jesus. Indarrak amaitzen joakozan; behar bada Golgotaraino ez zala helduko-ta, solotik etorren gizon bat derriortu eben kurutzea eroaten laguntzera...



**10. HAMARGARREN EGOTALDIA**:
JESUSI BERE SOINEKOAK KENTZEN DEUTSOEZ

- *Te adoramos, Cristo, y te bendecimos.*
- ***Porque por tu santa cruz redimiste al mundo***

Bere Jaungoikotasunari gogor eutsi barik gizon egin zanari; geure artera etorteko beheratu zanari..., orain soinekoak ere kendu egiten deutsoez; eta gudariek euren artean banatuko dabez. Geuk ere horixe egiten dogu zuzenak ez garenean, ohostuten (ohosten) dogunean, langileari ordain zuzena emoten ez deutsogunean, geure aberastasuna baino bilatzen ez dogunean, danean geure probetxua eta geure lagunena bilatzen dogunean...

*Asko izten ditugu erdi bilutsik, euren eskubideak erantsita*.

10.a Hona non daukazun Jesus bilozik
burutik biatzera zauriz beterik.

* Errukitu, Jauna. ** Pekatari honegaz.

ten zana ikusten. Guztien artetik emakume batek urteten dau: lotsa barik, bildur barik, gudarien artetik igaro eta Jesusengana heldu da.

*Negarrez ta maitasunez, zapi bateaz Jesusi aurpegia garbitu eutson. Eta, ordain lez, Jesusek bere irudia itxi eutson markatuta zapi haretan. Betirako oroigarria. Izan gaitezela geu ere, senideok, Beronikaren antzekoak. Sufritzen dagoenarengana lotsa barik hurreratu gaitezela. Hurreratu ta lagundu. Eurekan dago Jesus, eta laguntzaile egiten garen bakotxean, Jesusen presentzia somauko dogu.*

6.a Arpegiko izerdi eta odoletan
zapi bat busti dau hiru dobletan.

* Errukitu, Jauna. ** Pekatari honegaz.

## 7. ZAZPIGARREN EGOTALDIA:
JESUS BIGARRENEZ JAUSTEN DA LURRERA

- *Te adoramos, Cristo, y te bendecimos.*
- ***Porque por tu santa cruz redimiste al mundo***



*Jesus gure Jaun ona: Kalbariora bidean bigarrenez jausi, eta, aurrera egiteko, zutundu egin zinan. Azkeneraino heldu nahi izan zenduan. Ez zenduan nahi hasitako lana amaitu barik itxi. Egizu, geuk ere indar berbera izan daigula pekatutik urteteko.*

7.a Bigarren aldian hemen da jausi,
eta zu etzara kontura etorri.

* Errukitu, Jauna. ** Pekatari honegaz.

## 8. ZORTZIGARREN EGOTALDIA:
JESUS JERUSALENGO EMAKUMEEKAZ
AURKITZEN DA

- *Te adoramos, Cristo, y te bendecimos.*
- ***Porque por tu santa cruz redimiste al mundo***

*Jerusalengo emakumeok, ez egin negarrik nigaitik. Baina zeuekaitik eta zuen seme-alabekaitik bai, eizue negar. Nik, errubako nazan honek, honenbeste sufritu behar badot, zer sufritu behar izango ete dau pekatariak! Geure pekatuekaitik egin daigun negar. Damutu gaitezan eta parka eskatu Jainkoari.*